**Oharra:** orokorrean, lokailuak bi esaldi lotura semantikoaren bidez elkartzeko erabiltzen dira, hau da, testuak egiteko. Juntagailuak (eta, baina, edo, ere...), berriz, bi perpaus edo gehiago lotura gramatikalaren bidez elkartzeko erabiltzen dira.

| OHIKO LOKAILUAK | |
|---|---|
| **INFORMAZIO GEHIAGO GEHITU EDO ZEHAZTEKO:** | |
| **gainera**<br>*además* | Elurra ari zuen. **Gainera**, errepideak moztuta zeuden.<br>Oso ona da **eta, gainera**, ez da batere garestia. |
| **halaber**<br>*así mismo* | Donostiarrek egitasmoaren aurka daudela argi adierazi dute. Alkateak, **halaber**, ilegaltzat jo du. |
| **behintzat**<br>**bederen**<br>**behinik behin**<br>*por lo menos* | Andonik, **behintzat**, bazekien, neuk esan nion eta.<br>Anek eta Andonik, **behinik behin**, hori esan zuten.<br>Nik ez dut ezer ikusi, **bederen**. |
| **gutxienez** (kopurua)<br>*por lo menos*<br>*como mínimo* | Bazkarirako, **gutxienez**, hogei txuletoi beharko ditugu. |
| **bestalde**<br>*por otra parte* | Autoak bizitza erraztu digu gizakioi. **Bestalde**, ezin da ukatu arazoak ere ekarri dizkigula. |
| **bestela**<br>*de lo contrario* | Buelta eman tortillari; **bestela**, erreko duzu. |
| **gainerakoan**<br>*por lo demás* | Etxe zaharra da; **gainerakoan**, oso ondo dago. |
| **ALDEZ AURRETIK ESANDAKOA UKATU EDO OZTOPATZEKO:** | |
| **ordea**<br>**hala (eta guztiz) ere**<br>**halere**<br>**alabaina**<br>*sin embargo* (gogorra) | Eguraldi ona dugu gaur; ni, **ordea**, etxean geratuko naiz.<br>Eguraldi ona dugu gaur; **hala ere**, etxean geratuko naiz.<br>Eguraldi ona dugu gaur; **halere**, etxean geratuko naiz.<br>Eguraldi ona dugu gaur; **alabaina**, etxean geratuko naiz. |
| **berriz**<br>**ostera**<br>**aldiz**<br>*sin embargo* (leuna) | Hori nirea da; beste hau, **berriz**, lagun batena.<br>Hori nirea da; beste hau, **ostera**, lagun batena.<br>Hori nirea da; beste hau, **aldiz**, lagun batena. |
| **aitzitik**<br>*todo lo contrario* | Ez daude zure kontra; **aitzitik**, zuri lagundu nahian dabiltza. |
| **dena dela**<br>**dena den**<br>**haatik**<br>*aun así / a pesar de ello* | Oso zaila da; **dena dela**, saiatu egin behar dugu.<br>Oso zaila da; **dena den**, saiatu egin behar dugu.<br>Oso zaila da; **haatik**, saiatu egin behar dugu. |
| **ALDEZ AURRETIK ESANDAKOAREN ONDORIOA ADIERAZTEKO:** | |
| **beraz**<br>**hortaz**<br>**bada**<br>**orduan**<br>**hala**<br>*por lo tanto / pues* | Ez zinen bertan egon; **beraz**, ez dakizu zer gertatu zen.<br>Ez zinen bertan egon; **hortaz**, ez dakizu zer gertatu zen.<br>Ez zinen bertan egon; **bada**, ez dakizu zer gertatu zen.<br>Ez zinen bertan egon; **orduan**, ez dakizu zer gertatu zen.<br>Ez zinen bertan egon; **hala**, ez dakizu zer gertatu zen. |
| **ALDEZ AURRETIK ESANDAKOAREN KAUSA ADIERAZTEKO:** | |
| **izan ere**<br>**alabaina**<br>*efectivamente / ya que* | Kaleak jendez beteta daude. **Izan ere**, jaiak dira.<br>Kaleak jendez beteta daude. **Alabaina**, jaiak dira. |

## LOTURA MOTAK

### SINTAXIKOA (esaldi bakarra)

- **Menpekotasunaren bidez (bait-, -(e)lako, -(n)ez gero...): aditz bat beste baten menpean dago atzizki baten bidez**

  Banoa ohera, oso nekatuta **bai**nago.

  Nik gozoki batzuk jan baditut ere, gehienak Mikelek jan ditu.

- **Juntagailuen bidez (eta, baina, edo...): maila bereko perpausak juntagailu baten bidez lotura daude**

  Oso nekatuta nago **eta** banoa ohera.

  Nik gozoki batzuk jan ditut, **baina** gehienak Mikelek jan ditu.

### SEMANTIKOA (bi esaldi koma, puntu ala puntu eta komaren bidez bananduta)

- **Alborakuntzaren bidez: bi esaldi testuinguruaren logikaz lotuta daude.**

  Banoa ohera;(,) oso nekatuta nago.

  Nik gozoki batzuk jan ditut; (,) gehienak Mikelek jan ditu.

- **Lokailuen bidez: bi esaldi lokailu baten bidez lotuta (gainera, ordea, beraz...)**

  Banoa ohera; **Izan ere**, oso nekatuta nago.

  Nik gozoki batzuk jan ditut; Mikelek, **ordea**, gehienak jan ditu.